# JAUNAREN BIZTUERAKO PAZKO-DOMEKEA

## SARRERAKO OHARKIZUNA

Senideok: Bart, gaueko elizkizunean, barri pozgarri hau emon jakun: "Zuek bilatzen dozuen Jesus biztu egin da! Ez dago hilobian". Elizeak orain ia bi mila urte jaso eta harrezkero urtero ospatu dauan barri on pozgarri honek batu gaitu altara inguru honetara. Prestau daiguzan gure gogo-bihotzak urteko mezarik nagusienean parte hartzeko.

**BIZTU DA JAUNA EGIAZ: ALELUIA!**

Zatoze pozik Jaunagana.
Gora ta gora Hari kanta.
Jauna da Jainko, Jauna da Jainko, bereak gaitu:

## AINTZA ZERUETAN

Jauna biztu dalako pozez gainezka, kantau daigun gure Jaungoikoaren aintza.

## Ap Eg 10, 34a. 37-43:

Pazkoaldi osoan zehar, lehenengo irakurgaia Apostoluen Eginak deitzen dan liburutik hartzen da. Apostoluen esana gure fedearen oinarria da. Euren antzera, izan gaitezan geu ere Kristo biztuaren testigu.

## Erantzun Salmoa: 117. salmoa

Poztasunez beterik bat egin daigun salmisteagaz gure eskerrona adieraziz.

**R/. Hau eguna, hau, Jaunak egina,**
**gure poza ta gure atsegina.**

Edo: **Aleluia**.

Eskerrak Jaunari, ona da-eta,
haren maitasuna betikoa da-eta.
Esan begie israeldarrek:

haren maitasuna betikoa. R/.
«Jaunaren eskumak indarrez jokatu dau,
Jaunaren eskuma guztiz garaia da».
Ez naz hilko, ez, bizi baino,
Jaunaren egintzak kontatzeko. R/.

Etxegileek baztertutako harria
giltzarri bihurtu da.
Jaunak egin dau hori,
gure begien harrigarri. R/.

**Kol 3, 1-4:**

San Pauloren bizitza guztia Kristo bizi dala iragartea izan zan. Bateatuta gagozanok, Jesusen biztueratik bizi gara eta ezin geintekez bizi geuk nahi dogun lez, Jesusen erara baino.

**Jn 20, 1-9:**

Prestau gaitezan Ebanjelioa entzuteko: Jesusen biztuerea iragarriko deusku. Goratu dagigun Jauna, "Aleluia"ren kantu alaiaz.

**ALELUIA: Jesus Jauna (Pazkoaldian)**

A - le - lu - - ia. A - le - - lu - - ia. A - le - lu - -
ia. A - - le - - lu - - ia!

V/. Je - sus Jau - na, a - ger- tu e - gi - gu - zuz Li - bu - ru
San - tu - ak; su - tu gu - re bi - ho - tzak hitz e - gi - ten deus- ku - zu - ne - an.

**BATEO-AGINTZARIAK BARRIZTATZEA** (ihinztatzea)

Atzo gauean bedeinkatutako uraz txipriztinduko gaitu orain abadeak. Ur honek Bateoa gogoratuko deusku eta

orduan egindako agintzariak barriztauko doguz.
R/. Uko egiten deutsezue pekatuari, Satanasi eta haren egite guztiei? **—Bai UKO EGITEN DEUTSET**.
**R/.** Sinisten dozue Jainko Aita ahalguztiduna, Haren Seme bakar, Jesukristo, eta biengandik dan Espiritu Santua? —**BAI, SINISTEN DOT**.
**R/.** Sinisten dozeu Eleiza, Santuen alkartasuna, pekatuen parkamena eta haragiaren biztuerea? —**BAI, SINISTEN DOT**.

(*Ur bedeinkatuaz txipriztindu*)

**Bateoko uretan, Jauna, gaituzu**
**pekaturako hil ta zeuretzat biztu.**

*—Bateoagaitik, / eskerrik asko, seme-alaba egin / gaituzulako.*

*—Bateoan ginan / hil Jesusegaz //geroztik gaitezan / bizi beragaz.*

Jaungoiko ahalguztidunak garbitu gaizala pekatutik
eta, Eukaristia honen bidez,
bere erreinuko mahaian jarteko gai egin gaizala. Amen.

## JAINKO HERRIAREN OTOITZA

Egin dagigun otoitz, Jesus berbiztuaren Espiritua mundu osoaren gainean isuria izan daiten.




—Jesus berbiztuak gaur, mundu osoan, Pazkoa ospatzen dogunon fedea eta itxaropena sendotu daizan*, egin daigun otoitz*.

—Munduko herri guztietan bakea eta ongizatea, anaitasuna eta zuzentasuna garatu daitezan*, egin daigun otoitz*.

—Kristinauok eta borondate oneko pertsona guztiek

txiroen, makalen bidebakokeriaren eraginak jasaten dabezanen, baztarketa edo indarkeriaren biktimen alde egoten jakin daigun*, egin daigun otoitz*.

—Kristau alkartea osotzen dogunon alde, Ebanjelioaren ikasle eta misiolari izan gaitezan*, egin daigun otoitz*.

† Jaungoiko Aita, entzun gure otoitza Eleiza osoarentzako hain pozgarria dan egun honetan: emon, onartzen zaitugunoi, zure Seme Jesusen pazkoaren grazia askatzailea, parkatuak izatearen poza bizi izan daigun betiko. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

## PREFAZIOA

Beti emon behar deutsaguz eskerrak Jaungoiko Aitari; baina, gaur, aparteko eran: Jesusek heriotzea garaitu daualako eta amaibako bizitzearen bidea zabaldu deuskulako.




## Jaunartzean

**R/. Biztu da Kristo, Aleluia. Guregan dago, Aleluia**.

*—Jainkoak dau-ta gaur Kristo biztu: Aleluia!*
*Bere indarrez biztuko gaitu: Aleluia, Aleluia. R/.*

*—Gure gorputza dau-ta egoitza: Aleluia!*
*Orain berekin gaitu bat egin: Aleluia, Aleluia. R/.*

*—Jaunari kanta, goresmen eman: Aleluia!*
*bai bihotz eta bai gorputzean; Aleluia, Aleluia. R/.*

## AZKEN AGURRA

Senideok: Pazko Jaiei hasierea emon deutsegu; berrogeta hamar egunez luzatuko ditugu Pazko Jaiok, Jesusen biztuerea eta geurea ospatuz. Eleizatik urten

aurretik, jaso dagigun Pazko eguneko Bedeinkapen Nagusia.
.../..

**ZERU-LURREN ERREGINA**: aleluia!, aleluia!
Biztu jaku Jesus Jauna: Aleluia!

—Zuregandik sortu dana: Aleluia.
Hilobitik zutitu da: Aleluia!

—Otoitz zure Semeari: Aleluia!
bizia deigun danori: Aleluia!